# Donostiaco gasteac

Languille maisuen festa igande iñauterian 1830 garren urtean.

---

## Marcha.

Erritar gure Donostiaco
jende artzalle maiteac
ditugu gustis gausa ederrac
ugari eta merqueac:
soin egoquiyac, sapata pollit,
armariyo eta cuchac,
barrica, parol, perra, pasiyac
eta guraise chorrochac.

Donostiarrac oidira beti
umore onian oitubac,
iñauterian aqueri dute
bertaco canta soñuac:
gaur bertan ondo degu eracusten
bere languille maisuac,
goisetic arratz gueroni eta
andreac dibertitubac

---

(ueltan)

# Belaun chingoa

Dendariaren andre lanera eguiña,
gustis jostun fiña,
da escu ariña.
Zapatariyac beti duben laguna
andrecho cutuna
enteroco ona.
Arotzaren andrea lana eguin naya,
arguitzendu gaya
guerrico linaya.
Linterna eguilleac duben emastea
modusco gastea
bisiro maitea

Jorerguille andrea lanean ascarra,
maite du senarra,
biotzeco bacarra.
Da ferratzallearen andrecho gajoa
chit laguin gosoa,
entero jasoa.
Pacuyaguillearen emaste estiya
ondo icasiya,
compontzen pasiya.
Chorrotz-guillea nola len san alarguna,
artudu laguna
gaste diruduna.